# BERTSO ZARRAK

## BALENTIN BERRIOTXOA.—Xenpelar'ek jarriyak

**8**

1

Milla zortzireun irurogeita
au zazpigarren urtia
Kristo zerutik jetxi zanetik
oneraño bitartian:
iru obispok pasatu duten
martiriyuaren fuertia,
penagarriya izanda oyen
munduko errematia.

2

Baten bizitza kanta dezadan
au da bigarren bertsoa,
Elorrio'ko naturala da
Balentin Berriotxoa:
aita ta ama Bizkayan daude
semia anill da gaxoa,
salbajietan kunplitu zayo
eriotzako plazoa.

3

Amairu urtetik amabostera
estudiyoak ikasi,
gero aitaren ofiziyoa
erakusten zuten asi:
gogoak zeukan apaiz egin da
nayago zuela bizi,
tormentu gutxi mundu onetan
eztu beregan ikusi,

4

Berrogei urte orain zituen
gertatu balitz bizirik,
ogeita ta zazpi lendabiziko
estudiatzen asirik;
seminario batera joan zan
agotziyan ikasirik,
negarrez nabill aren pausoak
ezin adierazirik.

5

Seminario eder batian
Logroñon apaiz egiña,
beste guztiak bañan lenago
ikasirik esamiña;
buru abilla izanik eta
fede santurako liña,
negarrez urtu leiteke artaz
akordatuko bagiña.

6

Ogeita lau urte zituen
etzeukan memori illa,
kolejioko maisuak beziñ
estudiante abilla;
obispo jaunak ezaguturik
juxtua eta umilla,
agindu zuen meza eman ta
erretiratu dedilla.

7

Goizero labak jotzian meza
eman ta konfesiyora,
barau egiñez obra onetan
pasatzen zuen denbora,
pobrerik iñoiz etortzen bazan
eskian atai ondora
bere ogia ari eman ta
deboziyoa gogora.

8

Logroñon meza eman zuen ta
Elorriora etorri,
predikatzen ta konfesiyuan
bere errian zan jarri,
Azpeitiyako San Inaziyon
bixita egin du sarri,
azkenerako arren pausoak
ziraden lastimagarri.

9

Suertatu da gure Balentin
San Inaziyon sartzia,
pentsatu zuen ango padria
adbertenziyan artzia;
nola naizuen Santo Domingok
zeukan jantziya jartzia,
ta fabore egin ziyon
albazuen ekartzia

10

Ango padriak maite izanik
ipiñi zuan kontuan,
agindu ziyon sartu zedilla
Okañako komentuan;
bire guziyan eskian joan zan
gabak askotan kanpoan,
bere gorputza azotatuaz
allegatzen zan lekuan.

11

Allegatu zan Okañara ta
eman ziyoten jantzita,
berak naizuen gorputzarentzat
alako penitentzika:
munduko gauzak guztiyak beti
alde batera utziya,
neke trabaju nai gabietan
artu du pazientzika.

12

Gure Balentin Berriotxoak
egiñ zituen pausoak,
konsideratzen jarri ezkero
dirade lastimosoak;
Beti negarrez Jesusengana
zabaldurikan besoak,
aren biotza konsolatzen du
zeruko usai gozoak

13

Pasietzera etzan joaten
komentu lagunarekin,
etxian zeukan tertulia ona
errosario birekin:
bere gorputza martirizatzen
azote disziplinarekin.
oraziyoak baliyo badu
zeruan da Balentin.

14

Bakardadian oneraño zan
Balentiñen istoriya,
Okañatikan Manilara ziran
zortzi min stro abiya;
barkuan ere sufritu dute
makiñabat komeriya,
biotza penaz urtu leiteke
ez baldin bada arriya.

15

Okañatikan Manilaraño
barkuan bost illabete,
jakiña dago izango zala
asko leguas aparte;
zortzi ministro oyen artian
au zan sobresaliente,
gure Balentin ango maisubak
obispo nombratu dute.

16

Ango padriak agindu ziyon
eskubidia artzeko,
predikatzen asi dedilla
kristandadian jartzeko;
konfesiyo ta barau egunak
animaz akordatzeko,
pekatuaren mantxa Judasen
kalabozuan sartzeko.

17

Artua jan ta ura erari
arri gañian lo egin,
beti Jesusi erregututzen
gugaz akordatu dediñ;
kristandadia nai zuenari
konfesiyoak eragiñ,
jakiña dago salbajlakin
etzeguela atsegiñ.

18

Erreinu artan gobernadore
salbajien nagusiya,
Jaungoikuaren bildur gabia
estranjeriyetan aziya;
Relijiyoko fede santuan
jarri naiduen guziya
agindu zuen plazan kentzeko
ezpatarekin biziya.

19

Garagarren lendabtziko
goizian zirade asi,
arratzerako bost milletatik
etzan granorikan bizi;
Fede santuko kristaubak iltzen
zituenian ikusi,
Balentin bere lagunetara
abiatu zan igesi.

20

Pedro Almato eta bestia
Jeronimo Ermosilla
gero Balentin Berriotxoa
saltatu zan oben billa;
iru obispo juntatu ziran
zeukaten biotz umilla,
ayen bizitza laister izan da
martirizatu ta illa.

21

Arrapatuta kate gogorrakin
lotuak zeuden alkarri,
iltzeko eman sentenziya ta
kartzela banetan jarri;
soldadu tropa baten erdiyan
gero plazara ekarri
ezpatarekin lepoak moztu
dizkate lastimagarri.

22

Orretarako eskatu zuten
ordubeteko lekua,
Jaungoikuari egiñ artian
bere ofrezimentua;
gobernadore batek emandu
pena kastidadekua,
iñor or etaz damutatzen bada
bertan kentzeko lepua.

23

Iru obispo oyen gorputzak
ogei ta lau orduan
iduki eta enterratuak
urrikaltzeko moduan,
Orientalko probintziyan da
Jeudat deitzen dan lekuan
erregutzen det ayen animak
gerta ditezen zeruan.

24

Orra ogei ta lau bertso berri
ejenplo eder batian,
oroipengarri kanta ditzaten
pekatarien artian;
ai nere Jesus eskatzen dizut
graziya errematian,
komeni da ta sartu gaitzazu
Zeruetako atian.

Imprenta Macazaga – Renteria